# Urtean Zeharreko XIX. astelehena
## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Ezarri ituna zeuen bihotzean.*
*Maitatu egizue etorkina, zuek be etorkin izan zinien-eta.*

Deuteronomioa liburutik

*Dt* 10, 12-22

Moisesek honan berba egin eutson herriari: «Orain, Israel, zer eskatzen deutsu Jaunak, zeure Jainkoak? Hauxe besterik ez: begirune izan deiozula Jaunari, zeure Jainkoari; jarraitu daizuzala haren bideak, maitatu eta zerbidu daizula Jauna, zeure Jainkoa, bihotz-bihotzez eta gogo osoz, eta bete daizuzala gaur nik emoten deutsudazan Jaunaren aginduak eta legeak, zoriontsu izan zaitezan.

Jaunarenak, zeure Jainkoarenak, dira zeru zabalak, lurra eta bertako guztia. Baina zuen gurasoez bakarrik zaletu zan Jauna eta hareek maite izan ebazan, eta jarraian zuek, hareen ondorengoak, aukeratu zinduezan herri guztien artean, gaur jazotzen dan lez.

Ezarri, beraz, ituna zeuen bihotzean, eta ez izan burugogor aurrerantzean. Jauna zuen Jainkoa jainkoen Jainkoa eta

jaunen Jauna da-eta, Jainko handia, ahaltsua eta bildurgarria; ez dau alderdikeriaz jokatzen, ez eroskeriarik onartzen; justizia egiten deutse umezurtzei eta alargunei, maite dau etorkina, eta jatekoa eta janztekoa emoten deutsoz. Maitatu egizue, bada, etorkina, zuek be etorkin izan zinien-eta Egipton.

Izan begirune Jaunari, zeure Jainkoari, eta zerbidu egizu; bizi zaitez hari lotua eta zin egin haren izenean. Ha da zure Jainkoa eta ha dozu goratuko, berak egin ebazan-eta ikusi dozuzan gauza handiak eta bildurgarriak. Hirurogeta hamar lagun besterik ez ziran zure asabak, Egiptora jatsi ziranean; orain Jaunak, zeure Jainkoak, zeruko izarrak baizen ugari egin zaitu».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 147, 12-13. 14-15. 19-20 (R/. 12a)

R/. **Jerusalem, ospatu egizu Jauna.**
Edo: **Aleluia.**

V/. Jerusalem, ospatu egizu Jauna,
Sion, goratu zeure Jainkoa,

zure ateen sarrailak indartu ditualako
eta seme-alabak zure barruan bedeinkatu. R/.

V/. Zure mugetan bakea ezarri dau,
garirik onenaz ase zaitu.
Bialtzen dau lurrera bere mezua,
eta haren hitza bizkor eta arin doa. R/.

V/. Bere hitza iragarri deutso Jakoben herriari,
bere erabagiak eta aginduak Israeli.
Beste herriei ez deutse holakorik egin,
bere erabagirik ez deutse jakinarazo. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jaunaren aintzaren agerpena zan ha guztia.*

Ezekielen Profezia liburutik

*Ez* 1, 2-5. 24-28c

Joakin erregearen erbestealdiko bosgarren urtean, laugarren hilaren bostean, Jaunak hitz egin eutson Ezekiel abadeari, Buziren semeari, babiloniarren lurraldean, Kebar ibaiaren ondoan, eta Jaunaren indarra jaubetu zan haretaz.

Hara zer ikusi neban: haize-erauntsia etorren iparraldetik, hodei handi bat tximistek zeharkatuta eta argitasun

biziz inguratuta; erdian, metal goriak dauan lako distira. Hodeiaren erdian, lau izaki bizidun egozan, gizaki-itxurakoak.

Izaki bizidunen hego-hotsa entzun neban: ur handiena lako hotsa, Jainko Ahaltsuaren ahotsa lakoa; aurrera egitean, gudarostearen burrundada zirudian. Gelditzen ziranean, hegoak batzen ebezan.

Orduan, ahotsak urten eban izakien buru gainean egoan sabai gainetik; han, sabaiaren gainean, tronu-itxurako zeozer ikusi neban, zafir harriaren antzekoa; eta tronu-itxurakoaren gainetik, goren-gorenean, gizaki-antzeko irudia. Metal goriaren distira eban, eta suaren antzeko zeozeren erdian egoan, goitik beheraino argitasunez inguratuta. Haren inguruko argitasunak euri-egunean hodei artean agertzen dan ortzadarraren itxurea eban.

Jaunaren aintzaren agerpena zan ha guztia. Ikustean, ahuspez lurrera jausi nintzan.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 148, 1-2. 11-13b. 13c-14

R/. **Zeru-lurrak beterik daukaz zure distirak.**

Edo: **Aleluia.**

V/. Goratu egizue Jauna zerutik,
goretsi zeru-goienetik.
Goratu egizue, haren aingeru guztiok,
goretsi, haren gudari-talde guztiok. R/.

V/. Goratu egizue, munduko errege eta herri guztiok,
buruzagi eta munduko gobernari guztiok;
mutil eta neska, agure eta umeok.
Goratu begie Jaunaren izena,
izen goren bakarra. R/.

V/. Haren ospea zeru-lurren gainetik garai,
garaipena emoten deutso bere herriari;
gorespena zor deutsoe fededun guztiek,
gorespena Israelek, bere-berea dauan herriak. R/.

## I. eta II. urteetan

## Aleluia

Ik. *2 Ts* 2, 14

R/. **Aleluia.**

V/. Honetarako dei egin deusku Jainkoak Barri Onaren bidez,

Jesu Kristo gure Jaunaren aintza eskuratzeko. R/.

## EBANJELIOA

*Gizonaren Semea hil egingo dabe; baina, biztuko da.*
*Etxekoak libre dagoz zergetatik.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 17, 22-27

Aldi haretan, Galilean zehar ebiltzala, esan eutsen Jesusek ikasleei: «Gizonaren Semea gizakien esku itziko dabe; hil egingo dabe, baina hirugarren egunean biztuko da». Ikasleak oso nahigabetuta gelditu ziran.

[Jesus eta ikasleak] Kafarnaumera heldu ziranean, tenplurako zerga batzen ebenek Pedrogana joan eta esan eutsoen: «Zuen maisuak ez dau tenplurako zergarik ordaintzen ala?» «Bai», erantzun eutsen.

Pedro etxeratu zanean, Jesusek aurrean jarri eta esan eutson: «Zer deritxozu, Simon? Munduko erregeek norengandik hartzen ditue zergak edo kontribuzinoak, etxekoengandik ala arrotzengandik?» Pedrok erantzun eutson: «Arrotzengandik». Jesusek, orduan: «Etxekoak libre dagoz, orduan.

Halanda guzti be, inori zeresanik ez emoteko, zoaz itsasora, bota amua eta hartu lehenengo atarako dozun arraina; edegi eiozu ahoa, eta biren zerga ordaintzeko dirua aurkituko dozu. Hartu eta ordaindu zeuri eta bioi dagokiguna».

Jaunak esana.

______________________________________2

# Urtean Zeharreko XIX. martitzena

## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Josue, izan bihotz eta adore;*
*zeuk sartuarazoko dozu herria Jaunak agindutako lurraldera.*

Deuteronomioa liburutik

*Dt* 31, 1-8

Moisesek Israel herri osoari barriro hitz egin eta esan eutson: «Baditut honezkero ehun eta hogei urte, eta ez naz gauza daukadan kargurako; gainera, Jaunak esan deust: "Ez dozu Jordan hori igaroko". Jauna bera, zeure Jainkoa, igaroko da zure aurretik, berak hondatuko ditu zure aurrean Kanaango herriak, eta zuk botako dozuz euren lurraldetik. Josue joango da zure buru, Jaunak esan eban lez. Jaunak Sihon eta

Og errege amortarrei eta honeen lurraldeei egindakoa bera egingo deutse herri horreei be, hondatu hain zuzen be. Zuen esku jarriko ditu Jaunak, eta Nik agindu lez jokatuko dozue zuek hareekin. Izan bihotz eta adore! Ez bildurrik izan, ez ikaratu hareen aurrean, Jauna bera, zure Jainkoa, doa-eta zugaz; ez zaitu ezelan be itziko».

Gero, Moisesek Josueri deitu eta Israel osoaren aurrean esan eutson: «Izan bihotz eta adore; zeuk sartuarazoko dozu herria Jaunak asabei zin eginez agindu eutsen lurraldera, eta zeuk banatuko deutsezu herritarrei ondaretzat. Jauna bera joango jatzu aurretik eta zeugaz izango dozu; ez zaitu ezelan be itziko. Ez bildurrik izan, ez ikaratu!»

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Dt* 32, 3-4b. 7. 8. 9 eta 12 (R/. 9a)

R/. **Israel bere herritzat aukeratu eban Jaunak.**

V/. Jaunaren izena iragarriko dot;
autortu zuek handia dala gure Jainkoa.

Harkaitza da ha;
harek egina benetan bikaina. R/.
V/. Gogoratu zaitez antxinako egunez,
egin gogoeta joandako urteez.
Itaundu egiozu aitari, eta kontatuko deutsu,
itaundu zaharrei, eta azalduko deutsue. R/.
V/. Goi-goikoak herriei lurraldeak izentatu eutsezanean
eta Adamen seme-alabak munduan banatu,
lur-mugak ezarri eutsezan herriei,
hareen jainkoen kopuruaren arabera. R/.
V/. Baina Israel bere herritzat aukeratu eban Jaunak,
Jakoben herria bere ondare berezitzat.
Jaunak bakarrik eroan ebazan,
ez zan haregaz jainko arrotzik izan. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Liburua janarazo eustan*
*eta eztia baizen gozo egin jatan.*

Ezekielen Profezia liburutik

*Ez* 2, 8–3, 4

Jaunak esan eustan: «Gizaseme,

entzun esaten deutsudana; ez izan errebelde, herri hori lez; zabaldu ahoa eta jan egizu emoten deutsudan hau». Orduan, esku bat ikusi neban, nigana luzatuta; biribilduriko liburua eukan. Zabaldu eban liburua nire aurrean eta alde bietatik egoan idatzita: bertan negar-kantak, intziriak eta aieneak egozan idatzita.

Gero, esan eustan: «Gizaseme, jan biribilduriko liburu hau eta joan gero Israel herriari hitz egitera». Zabaldu neban ahoa eta liburua janarazo eustan. Eta esan eustan: «Gizaseme, bete sabela emoten deutsudan liburu honegaz». Jan neban, eta eztia baizen gozo egin jatan. Gero, esan eustan: «Gizaseme, zoaz Israel herriagana eta adierazo nire hitzak».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 119 [118], 14 eta 24. 72 eta 103. 111 eta 131 (R/. 103a)

R/. **Bai gozoa niretzat, Jauna, Zuk agindua!**

V/. Zure aginduak betetzea niretzat pozgarriago,

aberastasun guztiak baino.
Bai, zure aginduetan dot gozamena,
horreek neure kontseilari. R/.

V/. Zein ona niretzat zure ahoko legea,
urre-zidarrezko milaka txanpon baino hobea.
Bai gozoa niretzat Zuk agindua,
ahoan eztia baino gozoagoa. R/.

V/. Zure aginduak nire ondare betiko,
hareek deuste-eta bihotza pozten.
Ahoa zabaltzen dot eta arnasa hartzen,
zure aginduak biziro ditut-eta maitatzen. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Mt* 11, 29ab

R/. **Aleluia.**

V/. Hartu egizue nire buztarria, dino Jaunak,
eta ikasi Nigandik,
gozoa eta bihotz-apala naz-eta. R/.

### EBANJELIOA

*Kontuz! Ez dagizuela txiki honeetako inor gitxietsi!*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 18, 1-5. 10. 12-14

Aldi haretan, hurreratu jakozan ikasleak Jesusi eta itaundu eutsoen: «Nor da handiena zeruetako erreinuan?» Jesusek, umetxu bati deitu, hareen artean jarri eta esan eutsen:

«Benetan dinotsuet: Aldatu eta umeen antzeko bihurtzen ez bazarie, ez zarie sartuko zeruetako erreinuan. Beraz, bere burua ume honen antzera apaltzen dauana, hori da zeruetako erreinuan handiena. Eta honetariko ume bat nire izenean onartzen dauanak Neu onartzen nau.

Kontuz! Ez dagizuela txiki honeetariko inor gitxitzat hartu!

Zer deritxozue? Gizon batek ehun ardi baditu eta bat galtzen bajako, ez ete da laurogeta hemeretziak mendian itzi eta galdutakoaren bila joango? Eta aurkitzen badau, benetan dinotsuet, poz handiagoa izango dau bakar hagaitik, galdu ez diran laurogeta hemeretziakaitik baino.

Era berean, zeruko zuen Aitak ez dau gura txiki honeetariko bat be galtzerik».

Jaunak esana.

# Urtean Zeharreko XIX. eguaztena
## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Han hil zan Moises, Jaunak esan eban lez.*
*Ordutik, ez da sortu Israelen*
*Moises lako profetarik.*

Deuteronomioa liburutik

*Dt* 34, 1-12

Egun hareetan, Moisesek Moabeko lautadatik, Jeriko parean dagoan Nebo mendira, Pisga gailurrera, igon eban. Handik lurralde osoa erakutsi eutson Jaunak: Galaadetik Danerainoko lurraldea; Neftali, Efraim eta Manasesena, Judaren lurralde guztia Mediterraneo itsasoraino; Negev eta Jerikoko –Palmondo uriko– ibar ingurua, Tzoar uriraino. Eta esan eutson Jaunak: «Hori da Abrahami, Isaaki eta Jakobi zin eginez agindu neutsen lurraldea. Esan neutsen: "Zure ondorengoei emongo deutset". Zeure begiz ikusten itzi deutsut; baina ez zara bertan sartuko».

Han hil zan Moises, Jaunaren zerbitzaria, Moabeko lurraldean, Jaunak esan eban lez. Haranean lur

emon eutsoen, Moabeko lurraldean, Bet-Peorren aurrez aurre, eta inork ez dau izan haren hilobiaren barririk gaur arte.

Ehun eta hogei urte ebazan Moisesek hil zanean; ez jakon ikusmena ahuldu, ez eutsoen indarrek huts egin. Israeldarrek hogeta hamar egunez egin eben negar Moisesengaitik Moabeko lautadan, dolualdia bete eben arte.

Josue, Nunen semea, zuhurtziaz beterik egoan, Moisesek eskuak ezarri eutsozan-eta buruan. Israeldarrek obedidu egin eutsoen eta Jaunak Moisesi agindu eutson lez jokatu eben.

Ordutik, ez da sortu Israelen Moises lako profetarik, Jaunagaz hain hartuemon estuak izan ebazan Moises lakorik; inor ez haren parekorik mirariak eta egintza harrigarriak egiten, hau da, Jaunak bialduta, faraoiaren kontra eta honen funtzionarioen eta lurralde osoaren kontra Egipton Moisesek egindako mirari eta egintza harrigarriak lakoak egiten; ezta be inor Moisesek Israel osoaren aurrean baizen esku indartsuz eta era handian eta bildurgarrian jokatu

ebanik.
Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 66 [65], 1-3a. 5 eta 8. 16-17 (R/. ik. 20a eta 9a)

R/. **Bedeinkatua Jainkoa, bizirik deusku-eta eutsi.**

V/. Lur osoa, egiozu irrintzi Jainkoari,
kanta haren izen ospetsuari,
emon aintza eta gorespen hari.
Esan Jainkoari: «Zein izugarriak diran zure egintzak!» R/.

V/. Zatoze eta ikusi Jainkoak eginak,
izugarriak dira gizakien aldeko haren egintzak.
Bedeinkatu, herriok, gure Jainkoa,
oihukatu goraki haren gorespena. R/.

V/. Zatoze eta entzun, Jainkoari begirune deutsazuenok,
kontatuko deutsuedaz harek nire alde eginak.
Ahoz neutsan dei egin
eta mihinez goretsi. R/.

## II. urtean

### I. Irakurgaia

*Egin kurutze-itxurako ikur bana,*
*Jerusalemen egiten dabezan higuingarrikeria guztiakaitik*

*negar egiten dabenen bekokian.*

Ezekielen Profezia liburutik

*Ez* 9, 1-7; 10, 18-22

Ozen deadar egiten entzun neutsan Jaunari: «Hurreratu, uriaren zigortzaileok, bakotxa bere arma hondatzaileagaz». Orduan, sei gizon agertu ziran, iparraldera dagoan goiko atearen bidetik, bakotxak bere arma eskuan ebala. Hareen erdian linoz jantzitako gizon bat egoan, idazteko tresnak garrian ebazala. Sartu eta brontzezko altarearen ondoan gelditu ziran.

Israelen Jainkoaren aintza, euskarritzat ebazan izaki hegadunen gainetik goraturik, tenpluko ate-sarrerara joan zan. Orduan, linoz jantzitako eta garrian idazteko tresnak ebazan gizonari dei egin eta esan eutson Jaunak: «Zoaz Jerusalem uri osoan zehar eta egin kurutze-itxurako ikur bana, bertan egiten dabezan higuingarrikeria guztiakaitik intziri eta negar egiten dabenen bekokian».

Eta besteei hau esaten entzun neutsan: «Zeharkatu uria gizon horren atzetik eta egin triskantza errukirik

barik, ez parkatu inori. Zahar, neska eta mutil gazte, ume eta emakume, hil egizuez eta garbitu danak; baina ez ikutu kurutze-ikurra daroan inor. Santutegitik hasiko zarie».

Halan, tenpluaren aurrean egozan zaharretatik hasi ziran. Gero, esan eutsen linoz jantzitakoak: «Kutsatu tenplua, atariak hildakoz betez. Urten egizue!» Urten eta ekin eutsoen triskantzari urian.

Jaunaren aintza tenpluko sarreratik urten eta izaki hegadunen gainean kokatu zan. Orduan, izaki hareek hegoak zabaldu eta jaso egin ziran lurretik nire begi aurrean. Eta izaki hegadunak urtetean, gurpilak be eurekin batera mogidu ziran.

Tenpluaren sortaldeko ate-sarreran gelditu ziran, eta Israelen Jainkoaren aintza izaki hegadunen gainean egoan. Ohartu nintzan, izakiok Kebar ibaiaren ondoan, Israelen Jainkoaren azpian, ikusi nituan izaki bizidun eurak zirala. Launa aurpegi eta launa hego ebezan eta, hegopean, giza eskuen itxurako batzuk. Hareen aurpegiak Kebar ibaiaren ondoan ikusi nituan aurpegien

antzekoak ziran. Zuzen-zuzen joian bakotxa aurrera.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 113 [112], 1-2. 3-4. 5-6 (R/. 4b)

R/. **Jaunaren ospea zerua baino gorago.**
Edo: **Aleluia.**

V/. Goratu egizue, Jaunaren zerbitzariok,
goretsi Jaunaren izena.
Bedeinkatua izan bedi Jaunaren izena,
orain eta beti. R/.

V/. Eguzkiaren sorlekutik sarlekura,
goratua izan bedi Jaunaren izena.
Jauna herri guztien gainean garai dago,
haren ospea zerua baino gorago. R/.

V/. Nor da Jauna gure Jainkoa lakorik?
Gorenean dau tronua,
baina beheratu egiten da,
zerura eta lurrera begiratzeko. R/.

## I. eta II. urteetan

## Aleluia

*2 Ko* 5, 19

R/. **Aleluia.**

V/. Jainkoak ziharduan Kristogan mundua beragaz adiskidetzen,
eta geuri emon deusku adiskidetzearen

mezua. R/.

## EBANJELIOA

*Jaramon egiten badeutsu, irabazia dozu senidea.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 18, 15-20

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Zure senideak pekatu egiten badau zure aurka, zoaz beragana eta eiozu agiraka bakarrean. Jaramon egiten badeutsu, irabazia dozu senidea. Jaramonik egiten ez badeutsu, barriz, hartu egizuz zeugaz lagun bat edo bi, auzia bi edo hiru lekukoren autorpenaz erabagi behar da-eta. Honeei be jaramonik egiten ez badeutse, esaiozu alkarteari, eta alkarteari be jaramonik egin gura ez badeutso, izan bedi zuretzat jentil edo zergalari baten pareko.

Benetan dinotsuet: zuek mundu honetan lotua, zeruan be lotuta geldituko da, eta zuek mundu honetan askatua, zeruan be askatuta.

Beste hau be badinotsuet: zuetariko bik alkar hartzen badabe mundu honetan Jainkoari zeozer eskatzeko,

emongo deutse zeruko nire Aitak. Izan be, nire izenean bi edo hiru lagun baturik dagozan lekuan, han nago Ni euren artean».

Jaunak esana.

_____________________________________________4

# Urtean Zeharreko XIX. eguena

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jaunaren itun-kutxa zuen aurretik igaroko da Jordan ibaian zehar.*

Josue liburutik

*Jos* 3, 7-10a. 11. 13-17

Egun hareetan, Jaunak esan eutson Josueri: «Gaurtik aurrera goratu egingo zaitut Israel osoaren aurrean; holan jakingo dabe Ni zugaz nagoala, Moisesegaz egon nintzan lez. Emon agindu hau itun-kutxa daroen abadeei: "Jordan ibaiertzera heltzean, gelditu bertan"».

Josuek esan eutsen israeldarrei: «Hurreratu zaiteze eta entzun Jaunaren, zeuen Jainkoaren, hitzak: "Hau da Jainko bizia zuen artean dagoaneko seinalea eta kanaandarrak zuen aurretik botako dituaneko

ezaugarria: lur osoko jaubearen itun-kutxa zuen aurretik igaroko da Jordan ibaian zehar. Eta Jaunaren, lur osoko jaubearen, kutxa daroen abadeen oinek Jordango urak ikutu baizen laster, ur-korrontea eten eta urak gelditu egingo dira, hesi modura"».

Herria Jordan igarotzeko kanpalekutik abiatu zanean, itun-kutxa hartu eta herriaren aurrean jarri ziran abadeak. Uztaroa zan eta urte-sasoi horretan Jordan ibaia gainezka etortzen zan. Kutxa eroien abadeak Jordan ibaira heldu eta hareen oinek ur-ertza ikutu baizen laster, goitik etorzan urak gelditu egin ziran, hesi-modura artez jarriz, eta urak urrunera, Tzartan ondoan dagoan Adam uriraino, heldu ziran; Araba itsasora –hau da, Itsaso Hilera– joian ur-korrontea, barriz, guztiz eten zan. Eta herria igaro egin zan Jeriko parean. Israel osoak Jordan lehorrez zeharkatu bitartean, Jaunaren itun-kutxa eroien abadeak Jordanen erdian egon ziran zutunik, lehorrean.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 114 [113 A], 1-2. 3-4. 5-6

R/. **Aleluia.**

V/. Israelek Egiptotik urten ebanean,
Jakoben herria erbestetik,
Jaunaren santutegi bihurtu zan Juda,
haren jaubetza Israel. R/.

V/. Hareek ikustean, itsasoak ihes egin eban,
Jordanek atzera.
Mendiek salto egin eben ahariek lez,
muinoek bildotsek lez. R/.

V/. Zer dozu, itsaso, ihes joateko?
Eta zuk, Jordan, atzera egiteko?
Zer dozue, mendiok, salto egiteko ahariek lez,
eta zuek, muinook, bildotsek lez? R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Zoaz erbestera egun-argiz, hareen aurrean.*

Ezekielen Profezia liburutik

*Ez* 12, 1-12

Honan berba egin eustan Jaunak: «Gizaseme, herri errebeldearen erdian bizi zara. Badabez begiak ikusteko, baina ez dabe ikusten; belarriak entzuteko, baina ez dabe entzuten; izan be, herri errebeldea dira.

Orain, beraz, gizaseme, egin erbesteratuarena: hartu zeure fardela eta zoaz erbestera egun-argiz, hareen aurrean. Zagozan lekutik beste batera joango zara, hareen aurrean. Ea ohartzen diran herri errebeldea dirala. Erbestera joateko lez, zeure fardela atarako dozu egun-argiz hareen aurrean, eta zuk zeuk ilunabarrean urtengo dozu, hareen aurrean, erbesteratuak urteten daben lez.

Egizu zuloa horman, hareen begi aurrean, eta urten egizu handik; hareen aurrean lepoan fardela harturik, ilunpetan urtengo dozu: estaldu aurpegia, lurraldea ez ikusteko, seinale bihurtu zaitut-eta Israel herriarentzat».

Bete neban agindu jatana. Egun-argitan prestatu neban fardela, erbestera joateko lez; iluntzean zuloa egin neban neure eskuz horman eta ilunpetan urten neban, fardela lepoan nebala, guztien aurrean.

Biharamon-goizean Jaunak berba egin eustan: «Gizaseme, Israel herriak, herri errebelde horrek, ez ete deutsu itaundu zertan zabiltzan? Erantzun egiezu: "Hau dino Jainko Jaunak: mezu hau

Jerusalemen dagoan printzearentzat eta bertan bizi diran israeldar guztientzat da". Esaiezu: "Ni zuentzat seinale naz. Nik egina jazoko jatzue zuei be: erbestera joango zarie katigu. Zuen printzeak, gauzak lepoan hartu, horman zuloa egin eta ilunpetan urtengo dau; aurpegia estalduko dau lurraldea ez ikusteko"».
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 78 [77], 56-57. 58-59. 61-62 (R/. ik. 7c)

R/. **Ez ahaztu Jainkoaren egintza handiez.**

V/. Goi-goiko Jainkoa tentatu eben
eta haren aurka jagi ziran;
ez ebezan gorde haren aginduak.
Zapuztu eta traizino egin eutsoen, gurasoek lez,
uztai txarrak lez huts egin. R/.

V/. Muinoetako sasikultuekin suminarazo eben,
jeloskor jarri euren idoloekin.
Horren aurrean, hasarratu zan Jainkoa
eta zapuztu egin eban zeharo Israel. R/.

V/. Erbestera bialdu eban kutxa santua,
arerioaren esku jarri, Israelek bere

indar eta ospe ebana.
Ezpataren menpe itzi eban bere herria,
bere ondareagaz hasarraturik. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Sal* 119 [118], 135

R/. **Aleluia.**
V/. Erakutsi aurpegi argia, Jauna, zeure zerbitzari honi,
irakatsi zeure arauak. R/.

## EBANJELIOA

*Zazpi aldiz ez,*
*zazpitan zazpi mila bider baino parkatu behar dozu.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 18, 21–19, 1

Aldi haretan, hurreratu jakon Pedro Jesusi eta itaundu eutson: «Jauna, nire senideak bidebakokeriaren bat egiten badeust, zenbat bider parkatu behar deutsat? Zazpi bider?»

Jesusek erantzun eutson: «Zazpi bider ez, ezpada ze zazpitan zazpi mila bider. Hatan be, bere morroiakaz kontuak garbitu gura izan zituan erregeagaz bezala gertatzen da zeruetako erreinuagaz. Kontuak garbitzen

hastean, dirutza itzela zor eutson bat ekarri eutsoen. Eta nondik ordaindurik ez eukanez, bera eta emaztea, seme-alabak eta zituan guztiak saltzeko agindu eban nagusiak, zorra ordaintzeko.

Morroiak, orduan, nagusiaren oinetan ahuspezturik, arren eta arren esaten eutson: “Emoidazu astia eta dana ordainduko deutsut”. Nagusiak, errukiturik, dana parkatu eta libre itzi eban morroia.

Baina morroiak, urten orduko, diru apur bat zor eutson bere morroilagunagaz topo egin eban, eta, samatik heldu eta ito beharrean, esan eutson: “Ordaindu eidak zor deustana”. Lagunak, oinetan ahuspezturik, arren eta arren esaten eutson: “Emoidak astia eta dana ordainduko deuat”. Baina besteak ezetz, eta joan eta kartzelan sartu eban, zorra ordaindu arte.

Beste morroiak, gertatua ikusirik, mindu-mindu egin ziran, eta nagusiagana joan eta gertatuaren barri emon eutsoen.

Orduan, nagusiak morroiari deitu eta esan eutson: “Morroi gaizto hori!

Horrenbesteko zorra parkatu deuat nik, eskatu deustalako; ez ete zan bidezkoa heu be heure morroi-lagunaz errukitzea, neu hitaz errukitu nintzoan lez?” Eta nagusiak, hasarre bizian, borreroen esku itzi eban, zor guztia ordaindu arte.

Zeuoi be gauza berbera egingo deutsue zeruko nire Aitak, senideok alkarri bihotzez parkatzen ez badeutsazue».

Berbaldi hau amaitu ebanean, Galileatik alde egin eta Judeako mugetan sartu zan Jesus, Jordanez bestaldera igaroz.

Jaunak esana.

______________________________________________5

# Urtean Zeharreko XIX. barikua

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Eufrates ibaiaren bestaldetik hartu neban Abraham, zuen aita;*
*zuek Egiptotik atara zinduedazan*
*eta lurralde bat emon neutsuen.*

Josueren liburutik

*Jos* 24, 1-13

Egun hareetan, Israelgo leinu guztiak batu ebazan Josuek Sikemen. Dei egin

eutsen Israelgo arduradun, buruzagi, epaile eta funtzionarioei be, eta Jaunaren aurrera agertu ziran. Orduan, honan berba egin eutson Josuek herri osoari:

«Hau dino Jaunak, Israelen Jainkoak: "Zuen asabak, Terah eta honen seme Abraham eta Nahor, Eufrates ibaiaren bestaldean bizi ziran antxina eta beste jainko batzuk gurtzen ebezan. Eufrates ibaiaren bestaldetik hartu neban Abraham, zuen aita, eta Kanaango lurraldean zehar ibiliarazo neban; semea emon neutsan, Isaak, eta ondorengoak ugaritu. Isaaki seme bi emon neutsazan: Jakob eta Esau. Honi Seir mendia emon neutsan jaubetzan; Jakob eta honen semeak, barriz, Egiptora jatsi ziran.

Gero, Moises eta Aaron bialdu nituan, Egipto zigortu neban neure ekintzaz, eta zuek handik atara zinduedazan. Zuen asabak Egiptotik urten eta itsasoraino heldu ziran. Egiptoarrak pertsegidu egin ebezan Itsaso Gorriraino, euren gudu-gurdi eta zaldiekin. Zuen asabek oihu egin eutsoen Jaunari, eta Jaunak ilunpea

jarri eban egiptoarren eta zuen artean, eta itsasoa hareen gainera jausiarazo eban, danak estalduz. Zeuen begiz ikusi zenduen egiptoarrei egin neutsena. Gero, basamortuan bizi izan zinien luzaro.

Jordanez bestaldean bizi ziran amortarren lurraldera ekarri zinduedazan; hareek gerra egin eutsueen, baina Nik eskura emon neutsuezan eta hareen lurraldeaz jaubetu zinien, hondatu egin nituan-eta zuen aurrean. Balakek, Tziporren semeak, Moabeko erregeak, Israeli erasotzera urten eban, eta dei egin eta Beorren seme Balaam ekarri eban zuek madarikatzeko; baina Nik ez neutsan entzun nahi izan Balaami, eta bedeinkatu egin behar izan zinduezan; holan libratu zinduedazan haren eskutik.

Jordan ibaia igaro eta Jerikora heldu zinien; Jerikoko jenteak gerra egin eutsuen, baita amortarrek, ferezearrek, kanaandarrek, hititek, girgaxearrek, hebearrek eta jebusearrek be; baina Nik eskura emon neutsuezan. Erlabioak bialdu nituan, amortarren errege biak

zuen aurretik bota egiezan; hori ez zenduen zeuen ezpatari eta uztaiari esker lortu. Izerdirik atararazo ez deutsuen lurraldea emon deutsuet, eraiki ez dozuezan uriak, eta horreetan bizi zarie; landatu ez dozuezan mahastiak eta olibadiak be emon deutsuedaz, eta horreen frutuez janaritzen zarie"».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 136 [135], 1-3. 16-18. 21-22 eta 24

V/. Eskerrak Jaunari, ona da-eta:
R/. **Haren maitasuna betikoa da-eta.**
Edo: **Aleluia.**
V/. Eskerrak jainkoen Jainkoari: R/.
V/. Eskerrak jaunen Jaunari: R/.
V/. Basamortuan zehar gidatu eban bere herria: R/.
V/. Errege handiak jo ebazan: R/.
V/. Errege ospetsuak hil: R/.
V/. Hareen lurraldeak ondare emon eutsozan: R/.
V/. Bere zerbitzari Israeli ondare: R/.
V/. Arerioakandik libratu gaitu: R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA *

*Oso osokoa zan zure edertasuna,*
*Nik emon neutsuzan apaingarriei esker,*
*eta prostituzinoan hasi zinan.*

Ezekielen Profezia liburutik

*Ez* 16, 1-15. 60. 63

Honan berba egin eustan Jaunak: «Gizaseme, ohartuazo Jerusalem bere jokabide higuingarriaz. Esaiozu: "Hau dino Jainko Jaunak: Jerusalem, kanaandarra zara jatorriz eta jaiotzaz; aita amortarra zenduan eta ama hitita. Jaio zinan egunean, ez eutsuen zilbor-hestea ebagi, ez zinduezan uretan garbitu, ezta gatzez igurtzi eta zapitan batu be. Ez zan zutaz inor errukitu, onberaz gauza horreetako bat be zugaz egiteko. Emoten zenduan iguinagaitik, landa zabalera bota zinduezan jaio zinan egunean.

Ni zure ondotik igaro nintzan eta zeure odoletan lorrinduta ikusi zindudazan. Eta, odoletan etzunda zengozala, esan neutsun: 'Bizi! Bizi zaitez!' Landako bedarra lez haziarazo zindudazan; hazi, handi egin eta sasoira heldu zinan: bularrak hazi jatzuzan eta uleak urten, baina jantzirik barik

zengozan, narrugorritan.

Zure ondotik igaro nintzan barriro eta amodio-sasoian zengozala ikusi neban. Zure gorputz biluzia estaldu eta zutaz arduratu nintzan; ezkon-hitzarmena egin neban zugaz eta neurea izan zinan –dino Jainko Jaunak–. Uretan garbitu zindudazan, estaltzen zinduzan odola kenduz, eta orio usaintsuz igurtzi zindudazan. Jantzi bordatuak emon neutsuzan, narru fineko oinetakoak, linozko garrikoa eta zetazko gainjantzia. Bitxiz apaindu zindudazan: eskumuturrekoak jarri neutsuzan, katea saman, eraztuna sudurrean, belarritakoak eta diadema zoragarria buruan. Zure bitxiak urrezkoak eta zidarrezkoak ziran, zure jantziak bordatuak, lino finezkoak eta zetazkoak; zure janaria urun garbia, eztia eta orioa. Ezin ederragoa bihurtu zinan, erregina baten pareko. Nazino artera zabaldu zan zure edertasunaren ospea; oso osokoa zan-eta Nik emondako apaingarriei esker. Halan dino Jainko Jaunak.

Baina zu, zeure edertasunaz eta ospeaz baliaturik, prostituzinoan hasi

zinan, zeure gorputza edozeini eskeiniz.

Baina gaztea zinanean zugaz egin neban itunaz gogoratuko naz Ni, eta betiko ituna burutuko dot zugaz. Egin dozun guztia parkatuko deutsudanean, lehenaz gogoratuko zara eta, lotsaren lotsaz, ez zara ahorik zabaltzen ausartuko». Halan dino Jainko Jaunak.

Jaunak esana.

* Edo nahiago bada:

## I. IRAKURGAIA

*Zugaz egin neban itunaz gogoratuko naz Ni,*
*eta zeure jokabideaz lotsatuko zara.*

Ezekielen Profezia liburutik

*Ez* 16, 59-63

Hau dino Jainko Jaunak: «Zuk jokatu dozun lez jokatuko dot Neuk be zugaz, zin egina gitxietsi dozulako eta ituna hausi. Halan be, gaztea zinanean zugaz egin neban itunaz gogoratuko naz Ni, eta betiko ituna burutuko dot zugaz. Zu zeure jokabideaz gogoratuko zara eta lotsatuko, zeure ahiztak, zaharragoak eta gazteagoak, hartu dagizuzanean: alabatzat emongo deutsudaz, baina ez zugaz egin neban itunak horretara behartzen naualako.

Nik Neuk burutuko dot ituna zugaz, eta orduan jakingo dozu Neu nazala Jauna. Egin dozun guztia parkatuko deutsudanean, lehenaz gogoratuko zara eta, lotsaren lotsaz, ez zara ahoa zabaltzen ausartuko». Halan dino Jainko Jaunak.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Is* 12, 2. 3 eta 4bcd. 5-6 (R/. 1cd)

R/. **Baretu da zure hasarrea eta kontsolatu nozu.**

V/. Bai, Jainkoa dot salbatzaile!
Badot uste on eta ez naz bildur,
Jauna dot-eta indar eta kemen,
ha neure salbazino. R/.

V/. Atarako dozue ura pozik
salbazinoaren iturrietatik.
«Eskerrak Jaunari, dei egin haren izenari,
ezagutuarazo haren egintzak herriei,
iragarri zein bikaina dan haren izena. R/.

V/. Kanta Jaunari, bikain jokatu dau-eta,
jakin begie honen barri mundu osoan.
Egin poz-irrintzi eta oihu, Siongo bizilagunok,

handikiro dihardu-eta zuen alde Israelgo Santuak». R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *1 Ts* 2, 13

R/. **Aleluia.**

V/. Onartu egizue Jainkoaren hitza,
ez giza hitz huts modura,
Jainkoaren hitz modura baino, halan da-eta. R/.

### EBANJELIOA

*Zeuen burugogorkeriagaitik emon eutsuen Moisesek emaztea izteko baimena; baina hasieran ez zan holan.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 19, 3-12

Aldi haretan, Fariseu batzuk hurreratu jakozan Jesusi eta, zertan harrapatuko, itaundu eutsoen: «Bidezko ete jako gizonari bere emaztea edozein arrazoigaitik iztea?»

Harek erantzun eutsen: «Ez dozue irakurri Liburu Santuak dinoana ala? Hau da, hasieratik Egileak gizaseme eta emakume egin zituala, eta esan ebala: “Horregaitik, gizonak bere aita-amak itziko ditu eta bere emazteagaz

alkartuko da, eta biak bat izango dira”. Beraz, aurrerantzean ez dira bi, bat baino. Halandaze, Jainkoak bat egin dauana ez begi gizakiak banatu».

Hareek itaundu eutsoen: «Zergaitik emon eban, bada, Moisesek dibortzio-agiria idatzi eta emaztea izteko baimena?» Jesusek erantzun eutsen: «Zeuon burugogorkeriagaitik emon eutsuen Moisesek andrea izteko baimena; baina hasieran ez zan holan. Hauxe dinotsuet: bere emaztea itzi –legearen kontra alkartuak ez badira behintzat– eta beste bategaz ezkontzen danak, adulterioa egiten dau».

Ikasleek esan eutsoen orduan: «Holakoa bada senar-emazteen arteko lotura, ez dau merezidu ezkontzea». Jesusek erantzun eutsen: «Ez dira danak hori onartzeko gai, Jainkoak gai egiten dituanak baino. Batzuk ez dira ezkontzen, jaiotzaz ezin dabelako; beste batzuk giza eskuz ezinduak izan diralako; beste batzuk, barriz, zeruetako erreinuagaitik halan erabagi dabelako. Onartu leikeanak onartu begi».

Jaunak esana.

# Urtean Zeharreko XIX. zapatua I. urtean

## I. Irakurgaia

*Aukeratu egizue gaur zein zerbidu.*

Josueren liburutik

*Jos* 24, 14-29

Egun hareetan, esan eutson Josuek herriari: «Izan begirune Jaunari eta zerbidu egizue benetan eta leial. Baztertu Eufrates ibaiaz bestaldean eta Egipton zuen asabek zerbidu ebezan jainkoak, eta zerbidu egizue Jauna. Baina Jauna zerbitzea txarto begitantzen bajatzue, aukeratu egizue gaur zein zerbidu: zuen asabek Eufrates ibaiaz bestaldean zerbidu ebezan jainkoak ala amortarren jainkoak, orain bizi zarien herrialdeko jentearenak, izan be. Nik eta nire etxekoek Jauna zerbiduko dogu».

Herriak erantzun eban: «Urrun gugandik Jauna iztea, jainko arrotzak zerbitzeko! Jauna dogu geure Jainkoa; berak atara gaitu gu eta gure asabak Egiptotik, esklabotzatik; geure begiz ikusi doguz berak egindako mirari

handiak; berak zaindu gaitu egin dogun bide guztian zehar, eta igaro doguzan herri guztietan babestu gaitu. Jaunak bota ditu gure aurretik herri guztiak eta lurralde honetan bizi ziran amortarrak. Beraz, guk be Jauna zerbiduko dogu, bera dogu-eta geure Jainkoa».

Orduan, Josuek esan eutson herriari: «Zuek ezin izango dozue Jauna zerbidu, Jainko santua da-eta, beste jainkoak zerbitzea onartzen ez dauan Jainkoa; ez deutsuez parkatuko zeuen errebeldiak eta pekatuak. Jauna itzi eta jainko arrotzak zerbitzen badozuez, aurka jarriko jatzue eta, hainbeste on egin ondoren, txarto erabiliko zaitue eta hondatuko».

Herriak erantzun eutson Josueri: «Ez! Guk Jauna zerbiduko dogu». Josuek esan eutsen: «Jauna zerbitzea aukeratu dozue. Zeuok zarie testigu zeuen buruaren kontra!» Eta hareek: «Bai, testigu gara!» Orduan, Josuek: «Kendu, beraz, zeuen artean dozuezan sasijainkoen idoloak eta jarri zaiteze bihotzez Jaunaren, Israelen Jainkoaren, aldean». Herriak, orduan, Josueri: «Jauna, geure Jainkoa, zerbiduko dogu

eta haren esana beteko».

Egun haretan, Josuek hitzarmena egin eban herriagaz, eta legeak eta arauak ezarri eutsozan Sikemen. Jainkoaren legearen liburuan idatzi ebazan Josuek hitzarmenaren arauak. Gero, harri handi bat hartu, Jaunaren santutegi ondoan dagoan artearen azpian zutunik jarri eta esan eutson herriari: «Harri hau testigu izango da gure aurka, Jaunak esan deuskuzan hitz guztiak entzun ditu-eta; zuen aurkako testigu izango da, zeuen Jainkoa ukatu ez dagizuen». Ondoren, Josuek bialdu egin eban herria, nor bere ondarera.

Jazoera honeen ondoren, Josue, Nunen semea, Jaunaren zerbitzaria, hil egin zan, ehun eta hamar urte ebazala.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 16 [15], 1-2a eta 5. 7-8. 11 (R/. ik. 5a)

R/. **Zeu zaitut, Jauna, nire ondarea.**

V/. Gorde nagizu, Jainko,
Zugan naz-eta babesten.
Hau dinotsat Jaunari: «Zeu zaitut neure Jauna».
Jauna, Zeu zaitut neure ondarea, neure

edontzia,
zeure esku dago nire zoria». R/.
V/. Bedeinkatzen dot Jauna, aholku deusteta emoten,
gauez be berak dau nire barrua hezten.
Begi aurrean dot Jauna eten barik;
ha eskuman dodala, ez naiteke dardaratu. R/.
V/. Bizitzarako bidea erakutsiko deustazu;
alaitasunez beteko nozu zeure aurrean,
zorionez betiko zeure ondoan. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Nor bere jokabidearen arabera epaituko dot Nik.*

Ezekielen Profezia liburutik

*Ez* 18, 1-10. 13b. 30-32

Honan berba egin eustan Jaunak: «Zer dala-eta errepikatzen dozue esaera hau Israel herrian: "Gurasoek mahats garratza jan, eta seme-alaben haginak kirri-kirrika?"

Nik, Jainko Jaunak, zin dagit neure biziagaitik: ez dozue gehiago ahotan erabiliko esaera hori Israelen. Hara, bizi guztiak dira nireak, aitaren bizia nahiz semearena. Pekatu egiten dauana, ha hilko da.

Hartu daigun, adibidez, gizon zintzo bat, zuzenbidez eta justiziaz jokatzen dauan gizona; ez dau sasi-kultulekuetako jatorduetan parte hartzen, ezta uste ona Israelgo idoloetan jartzen be; ez dau lagun hurkoaren emaztea desohoratzen, ezta hilerokoagaz dagoan emakumeagana hurreratzen be; ez dau inor zapaltzen, eta bahituran hartua bihurtu egiten dau; ez dau lapurretarik egiten, jaten emoten deutso gose danari eta jantzia biluzik dagoanari; ez dau mailegurik lukurreriaz edota interesak kobratzeko egiten; ez dau bidebakokerian esku-hartzen eta alderdikeriarik barik epaitzen dau auzietan; nire legeen arabera ibiltzen da eta nire erabagiak betetzen ditu, leial jokatuz. Honakoa gizon zintzoa da; beraz, biziko da. Halan dino Jaunak.

Baina emon daigun, gizon horrek seme gaizkile eta odolzale bat dauala eta gauza oker horreetakoren bat egiten dauala, aitak ez lez. Hori ez da biziko; gauza higuingarri horreek egin dituanez, hil egingo da eta bera izango da bere heriotzaren errudun.

Beraz, Israel herri, nor bere jokabidearen arabera epaituko dot Nik –dino Jainko Jaunak–. Bihurtu zaiteze, aldendu zeuen gaiztakeria guztietatik eta ez zarie errudun izango. Kendu zeuekandik egindako gaiztakeria guztiak eta egizuez barri zeuen gogo-bihotzak. Zergaitik hil behar dozue, israeldarrok? Nik ez dot inoren heriotzarik nahi –dino Jainko Jaunak–; bihurtu, bada, eta bizi zaiteze».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 51 [50], 12-13. 14-15. 18-19 (R/. ik. 12a)

R/. **Bihotz garbia, Jainko, sortu egizu nigan.**

V/. Ene Jainko, sortu bihotz garbia nigan,
barritu arnasa sendoa nire barruan.
Ez nagizu bota zeure aurretik,
ez kendu niri zeure arnasa santua. R/.

V/. Poztu nagizu barriro zeure salbazinoaz,
sendotu nagizu zeure arnasa oparoaz.
Erakutsiko deutsedaz gaiztoei zure bideak,
eta Zugana bihurtuko dira pekatariak. R/.

V/. Sakrifizioak ez dozuz atsegin;

erre-oparia eskeiniko baneutsu, ez zeunke onartuko.
Damuz hausiriko espiritua da
Jainkoak nahi dauan sakrifizioa.
Zuk ez dozu gitxiesten, ene Jainko,
bihotz hausia eta umildua. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

Ik. *Mt* 11, 25

R/. **Aleluia.**
V/. Bedeinkatua Zu, Aita, zeru-lurren Jauna,
erreinuari buruzko Barri Ona
jente apalari agertu deutsazulako. R/.

**EBANJELIOA**

*Ez galarazo umeei Nigana etortzen,*
*holakoena da-eta zeruetako erreinua.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 19, 13-15

Aldi haretan, umeak eroan eutsoezan Jesusi, hareen gainean eskuak ezarri eta otoitz egin egian; ikasleek, ostera, hasarre egiten eutsien. Jesusek esan eutsen: «Laga umeei Nigana etortzen, ez galarazo, zeruetako erreinua holakoena da-eta».

Eta, umeei eskuak gainean ezarri ondoren, joan egin zan handik.
Jaunak esana.